# SAN FRAISKUREN MEZATARAKO OTOITZAK BERTSOTAN



***Hasiera otoitza***

San Fraisku dogu leku hontako
babes eta zaindaria;
bere bizitzan sinistun eta
Inazio'n lagun handia.
Haren eskutik deutsugu, Jauna,
luzatzen otoitz txikia:
*gure bizitza, izan daitela,*
*misiolari bitxia.*

***Oparien gaineko otoitza***

San Inaziok aurkitu eban
Xabierkoagan laguna
Indian zehar iragarteko
Jainkoaren Barri Ona.
Goa urian Portugaldarrek
guztiz ahazturik eukena.
*Opari hontan eskeintzen dogu*
*sinist<u>**ea**</u>ren zoriona.*

***Jaunartze ondorengoa***

Jaungoiko ona, Fraiskuren eskuz
hartu dogu mesedea,
eta eskatzen deutsugu, zinez,
landu daigula Fedea.
Ha barik, beste dana eukita,
dogu hutsa amestea:
*zaindu daigula aurrerantzean*
*danok alkar maitatzea.*